# URTEAN ZEHARREKO IX. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Hara, aukeran jartzen deutsuedaz gaur bedeinkazinoa eta madarikazinoa.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 11, 18. 26-28. 32

Honan berba egin eutson Moisesek herriari: «Ezarri nire hitz honeek zeuen buru-bihotzetan; lotu egizuez seinale lez eskumuturrean eta oroigarri lez bekokian.

Hara, aukeran jartzen deutsuedaz gaur bedeinkazinoa eta madarikazinoa; bedeinkazinoa, gaur nik emoten deutsuedazan Jaunaren, zeuen Jainkoaren, aginduak onartzen badozuez; madarikazinoa, Jaunaren, zeuen Jainkoaren, aginduak onartzen ez badozuez, eta gaur nik erakusten deutsuedan bidetik aldentzen bazarie, ezagutzen ez dozuezan jainko arrotzei jarraituz». Ahalegindu zaiteze, beraz, arretaz, gaur emoten deutsuedazan lege eta erabagi guztiak betetzen.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 31 [30], 2-3b. 3c-4. 17 eta 25 (R/. ik. 3b)

R/. **Izan zakidaz harkaitz, Jauna, ni gordetzeko.**

V/. Zugan babesten naz, Jauna,
ez nadila behin be lotsatuta geratu;
atara nagizu onik, zuzena zara-eta.
Makurtu egidazu belarria,
bizkor, libratu nagizu! R/.

V/. Izan zakidaz harkaitz babesle,
gaztelu salbatzaile.
Zeu zaitut-eta neure hatx eta gaztelu,
zeure izenaren ohorez eroan nagizu eta gidatu. R/.

V/. Erakutsi aurpegi argia zerbitzari honi,
salbatu nagizu zeure maitasunaz.
Eutsi gogor, izan bihotz,
Jaunagan itxaroten dozuen guztiok! R/.

## II. IRAKURGAIA

*Fedeagaitik hartzen ditu zintzotzat Jainkoak gizon-emakumeak,*
*eta ez legea betetzeagaitik.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 3, 21-25a. 28

Senideok: Orain, legea alde batera itziz agertu dau Jainkoak bere

salbazino-indarra, Moisesen legeak eta profetek adierazoa. Jainkoaren salbazino-indar hau Jesu Kristoganako sinismenaren bidez heltzen da fededun guztiengana. Jainkoak ez dau bereizketarik egiten, guztiek egin ebelako pekatu eta Jainkoaren aintzarik barik aurkitzen diralako. Baina Jainkoak bere onginahiaz eta dohai hutsez hartzen ditu zintzotzat, Jesu Kristoren bidez burutu dauan askapenari esker.

Jesu Kristok bere odola isuri eban, eta Jainkoak parkamen-bide egin dau Kristo harengan sinisten dabenentzat. Ziur dakigu-eta fedeagaitik hartzen dituala zintzotzat Jainkoak gizon-emakumeak, eta ez legea betetzeagaitik.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 15, 5

R/. **Aleluia.**

V/. Neu naz mahatsondoa eta zuek aihenak, dino Jaunak;
norbait Nigan badago, Ni harengan lez,
horrek frutu asko emongo dau. R/.

## EBANJELIOA

*Hatx gainean eraikitako etxea,*
*eta hondar gainean eraikitakoa.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 7, 21-27

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Ez da nahiko Niri "Jauna, Jauna" esatea zeruetako erreinuan sartzeko; hau da beharrezkoa: zeruan dagoan nire Aitaren nahia egitea. Epai-egunean askok esango deust: "Jauna, Jauna, ez ete genduan zure izenean berba egin eta zure izenean deabruak bota eta zure izenean mirari asko egin?" Baina Nik erantzungo deutset: "Ez zaituet inoiz ezagutu; alde Nigandik, gaizkileok!"

Beraz, nire berba honeek entzuten eta betetzen dituana bere etxea hatx gainean eregi eban gizon zentzundunaren antzekoa da. Egin eban euria, etorri ziran uriolak, jo eban haizeak eta eraso eutsoen etxe hari; baina ez zan jausi, ze, hatx gainean oinarrituta egoan.

Nire berba honeek entzun bai, baina betetzen ez dituana, bere etxea hondar gainean eregi eban gizon burubakoaren antzekoa da. Egin eban euria, etorri

ziran uriolak, jo eban haizeak eta eraso eutsoen etxe hari; eta jausi egin zan eta guztiz hondatuta gelditu».

Jaunak esana.

## URTEAN ZEHARREKO IX. DOMEKA
### B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Izan gogoan zeu be esklabo izan zinala Egipton.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 5, 12-15

Honan berba egiten dau Jaunak: «Gorde zapatua, Jaunari sagaratuz, Jaunak zure Jainkoak agindu deutsun lez. Sei egunez egingo dozu lan eta zeure eginbehar guztiak burutuko; baina zazpigarren eguna atseden-eguna dozu, Jaunari, zeure Jainkoari, sagaratua.

Ez egin ezelako lanik egun horretan, ez zuk, ez zure seme-alabek, ez zure morroi-neskameek, ez zure idi, asto zein beste aberek, ezta zure urietan bizi dan etorkinak be; holan, zure morroi-neskameek be, zuk lez, atseden hartu ahal izango dabe.

Izan gogoan zeu be esklabo izan

zinala Egipton, eta Jaunak zeure Jainkoak atara zinduzala handik ahalmen handiz eta esku indartsuz; horregaitik agindu deutsu Jaunak zeure Jainkoak atseden-eguna gordetzeko».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 81 [80], 3-4. 5-6b. 6c-8b. 10-11b (R/. ik. 2a)

R/. **Egin pozez oihu laguntzaile dogun Jainkoari.**

V/. Ekin kantuari, jo danbolina,
jo zitara gozoa eta harpa.
Jo turuta ilbarrian,
ilbeteko gure jaiegunean. R/.

V/. Horixe da-eta Israelen legea,
Jakoben Jainkoak erabagia,
Joseren familiari ezarritako araua,
Egiptotik urten ebanean. R/.

V/. Berbakera ezezaguna entzuten dot:
«Kendu neutsun zama lepotik,
askatu neutsuzan eskuak lan astunetik.
Larrialdian dei egin zeunstan,
eta libratu zindudazan. R/.

V/. Ez izan zeugan beste jainkorik,
ez gurtu jainko arrotzik.
Neu naz Jauna, zure Jainkoa,
Egiptotik atara zinduzana». R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jesusen bizia agertzen da gure izate hilkor honetan.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 4, 6-11

Senideok: «Distiratu begi argiak ilunpean» esan eban Jainkoak berak biztu dau argia gure bihotzean, Jesu Kristoren aurpegian distira egiten dauan Jainkoaren aintza argiro ezagutu dagigun.

Baina altxor baliotsu hau buztinezko ontzitan daroagu, argi agertu dadin honenbesteko indarra Jainkoagandik datorrela, eta ez gugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina zapaltzen ez; larri gagoz, baina ustea galduta ez; erasopean bai, baina eskutik itzita ez; lurrera botatzen gaitue, baina hondatzen ez; nonahi eta beti Jesusen heriotza daroagu geugan, Jesusen bizia be gugan agertu dadin.

Bizi garan bitartean, beti heriotzara garoez Jesusengaitik, gure izate hilkor honetan Jesusen bizia be agertu dadin.

Jaunak esana.

Aleluia

Ik. *Jn* 17, 17b. a

R/. **Aleluia.**
V/. Zure hitza da egia, Jauna;
sagaratu gagizuz egiaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Gizonaren Semea zapatuaren beraren nagusi da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 2, 23–3, 6

Behin baten, larunbatez gari-soloetan zehar joian Jesus. Eta ikasleak igarokeran galburuak ebagiten hasi ziran. Fariseuek esan eutsoen Jesusi: «Zelan dihardue egiten, zapatuz legezko ez dana?»

Harek erantzun: «Ez ete dozue inoiz irakurri zer egin eban Davidek beharrizan baten, bera eta bere lagunak gosekilik gertatu ziranean? Zelan, Abiatar abade nagusi zala, Jainkoaren etxean sartu eta Jaunari eskeiniriko ogiak jan zituan, legez abadeek bakarrik jan eikiezanak, eta zelan bere lagunei be emon eutsen?»

Eta esan eutsen: «Zapatua gizakiarentzat egin eban Jainkoak, ez gizakia zapatuarentzat. Halandaze,

Gizonaren Semea zapatuaren beraren nagusi da».

Jesus sinagogan sartu zan barriro. Bazan han gizon beso-igartu bat. Zelatan egokiozan zapatuan osatzen ete eban, zertan salatuko ebiltzan-eta. Jesusek beso-igarrari esan eutson: «Jagi eta zatoz hona erdira». Eta besteei esan eutsen: «Zapatuz zer da bidezko, ona egitea ala txarra egitea, bizia salbatzea ala kentzea?» Hareek, ostera, isilik. Jesusek, ingurukoei hasarre begiraturik eta euren burugogorkeriaz mindurik, esan eutson gizonari: «Luzatu beso hori». Harek luzatu eban, eta osatu egin jakon.

Handik urten orduko, fariseuek eta Herodesen alderdikoek alkar hartu eben Jesusen kontra, bera zelan galduko.

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Gizonaren Semea zapatuaren beraren nagusi da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutikÇ

*Mk* 2, 23-28

Behin baten, larunbatez gari-soloetan zehar joian Jesus. Eta ikasleak igarokeran galburuak ebagiten hasi ziran. Fariseuek esan eutsoen Jesusi: «Zelan dihardue egiten, zapatuz legezko ez dana?»

Harek erantzun: «Ez ete dozue inoiz irakurri zer egin eban Davidek beharrizan baten, bera eta bere lagunak gosekilik gertatu ziranean? Zelan, Abiatar abade nagusi zala, Jainkoaren etxean sartu eta Jaunari eskeiniriko ogiak jan zituan, legez abadeek bakarrik jan eikiezanak, eta zelan bere lagunei be emon eutsen?»

Eta esan eutsen: «Zapatua gizakiarentzat egin eban Jainkoak, ez gizakia zapatuarentzat. Halandaze, Gizonaren Semea zapatuaren beraren nagusi da».

Jaunak esana.

---

# URTEAN ZEHARREKO IX. DOMEKA

## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Arrotzen bat etortzean, entzun egiozu.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 8, 41-43

Egun hareetan, honan egin eban Salomonek otoitz tenpluan: «Izango dabe arrotzek be zure izen handi, esku indartsu eta egintza ahaltsuen barri. Zure izenak erakarrita, zure herri Israelgoa ez dan arrotzen bat urruneko lurraldetik etortzen bada tenplu honetan otoitz egitera, entzun Zuk zerutik, bizi zaran leku horretatik, eta emoiozu arrotzari eskatuko deutsun guztia. Holan, lurreko herri guztiek jakingo dabe zure izenaren barri eta begirune izango deutsue, zeure herri Israelek lez. Eta jakingo dabe gainera nik eraikitako tenplu hau zure izenari eskeinita dagoala».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 117 [116], 1. 2 (R/. Mk 16, 15)

R/. **Zoaze mundu guztira eta iragarri Barri Ona.**

Edo: **Aleluia**.

V/. Goratu egizue Jauna, nazino guztiok,
goratu egizue, herri guztiok. R/.

V/. Sendoa da-eta guretzat haren

maitasuna,
beti-betikoa Jaunaren leialtasuna. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Oraindino gizakiei atsegin emon guran banenbil,*
*ez nintzateke Kristoren zerbitzari izango.*

San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolaren hasiera

*Ga* 1, 1-2. 6-10

Nik, Paulok, ez giza aginduz edo izendapenez, Jesu Kristoren eta hau hilen artetik biztu eban Jainko Aitaren izendapenez apostolu nazan honek baino, eta nigaz diran senide guztiek, Galaziako eleiz alkarteei.

Harriturik nago, Kristoren onginahiaz dei egin eutsuenagandik aldendu eta beste barri on batera zein bizkor aldatu zarien ikusiz. Ez dago, ostera, beste barri onik; baina badabiltz hor batzuk zuek nahasten, Kristoren Barri Ona goitik behera irauli guran.

Beraz, norbaitek, gu geu nahiz zeruko aingeruren bat izanik be, iragarri geuntsuena ez dan beste barri on bat iragartzen badeutsue, izan bedi madarikatua! Lehen be esan neutsuena dinotsuet orain barriro: madarikatua, hartu dozuen Barri Ona ez dan beste

bat iragartzen deutsuena!

Gizakien onespena bilatzen ete dot nik ala Jainkoarena? Gizakiei atsegin emoten ahalegintzen ete naz ni? Oraindino gizakiei atsegin emon guran banenbil, ez nintzateke Kristoren zerbitzari izango.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Jn* 3, 16

R/. **Aleluia.**

V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua, bere Seme bakarra emon eutson; harengan sinisten dauanak betiko bizia dau. R/.

## EBANJELIOA

*Israelen bertan be ez dot aurkitu holako sinismenik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 7, 1-10

Aldi haretan, Jesus, herriari egindako hitzaldia amaiturik, Kafarnaumen sartu zan. Bazan han erromatar ehuntari bat, eta honek morroi bat eban oso maitea; morroia txarto egoan, hilzorian. Ehuntariak, Jesusen barri entzunik,

judegu-buruzagi batzuk bialdu eutsozan, morroia osatzera etortzeko erreguaz.

Hareek, Jesusengana joanik, arren eta arren eskatu eutsoen: «Merezidu dau Zuk hori egitea, ze, maite dau gure herria eta berak egin deusku sinagoga be».

Jesus eurekin joan zan. Etxetik hur samar zala, lagun batzuk bialdu eutsozan ehuntariak, esatera: «Ez hartu nekerik, Jauna, ze, ni ez naz inor Zu nire etxean sartzeko. Horregaitik, ez naz ausartu neu Zugana joaten; nahiko dozu berba bat esatea, nire morroia osatzeko. Neuk be, neu inoren menpean egon arren, soldaduak ditut neure menpean, eta bati joateko agintzen badeutsat, joan egiten da; beste bati etortzeko agindu, eta etorri egiten da; eta nire morroiari zeozer egiteko esan, eta halan egiten dau».

Hau entzutean, Jesus harritu egin zan haretaz eta, ondorik etorkion jenteagana bihurturik, esan eban: «Egia esan, Israelen bertan be ez dot aurkitu holako sinismenik». Mandatariak etxera bihurtu ziranean, osatuta aurkitu eben

